## Bagilaren 1. zapatuan: San Blas

### Sarrera-oharra

Egun on, senideok. Otsailaren 3ko san Blas Bagilaren lehenengo zapatuan ospatzen dihardugu. Kapritxoa? Negu gorrian arazoak izaten dirala-eta, uda aldera lasaiago ospatu geikealako? Ondo legoke Eukaristia geure kapritxoetara erabiltea?

Ea, ba, Jainkoaren deia entzuten dogun eta, Blas martiri santuaren eskutik, Jainkoak gaur guri eskatzen deuskunari erantzuteko prestatzen garan. Goazen alaitasunez Eukaristia ospatzera.



**GOAZEN ALKARTURIK** biztuta fedea
argitan zabalik maitasun bidea.

[1] *Entzun dezagun apaltasunez*
*entzun dezagun Jaunaren hitza*
*Bere hitzetan gure egia*
*gure indarra gure bizia.*

[2] *Gurekin dogu maisu ta lagun*
*gurekin dogu, gurekin, Jauna!*
*Egin dezagun zuzentasunez*
*ta maitasunez bere esana!*

### Abadearen agurra

† Aitaren eta Semearen…
—Amen.
† Jaungoiko gure Aitaren eta Jesu Kristo gure Jaunaren grazia eta bakea zuekin.
—Bedeinkatua Jaungoikoa, Jesu Kristo gure Jaunaren Aita.

### Damu-otoitza

Jainkoaren esku jarriko gara, senideok, bere errukiak garbitu gaizan, Eukaristia honetan duintasunez esku hartu ahal izateko:

—Jesus Jauna, bizia geure alde emoteraino maite gaituzuna, *erruki, Jauna*.

—Jesus Jauna, Jainkoaren esanetara bizi izan zinana, *Kristo, erruki*.

—Jesus Jauna, askea eta zoriontsua izan zinana, *erruki, Jauna*.

**OTOITZA**

Entzun, Jauna, zeure herriari,
Blas martiri santua lagun dogula, egiten dogun otoitza,
lur honetan bakearen poza
eta gero betiko bizia lortzeko laguntza izan daian.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez,
Zurekin eta Espiritu Santuarekin batean
Jainko eta errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan.

**I. Irakurgaia** (2 Tm 4, 1-8)

Amaitu dau Paulok bere eginkizuna. Baina oraindino baltz ikusten dauz gauzak, eta bere ikaslea adoretu gura dau ekintza aurrera eroan daian. Berbok geuretzat lez hartuko bagenduz…

*Iragarri Barri Ona.*
*Gainean dot mundu honetatik abiatzeko ordua,*
*eta Jaunak garaipenaren koroa emongo deust.*

San Paulo Apostoluak Timoteori egindako bigarren epistolatik

Anaia maitea: Jainkoaren aurrean eta, errege lez agertuz, biziak eta hilak epaitzera etorriko dan Kristo Jesusen aurrean, erregutzen deutsut: iragarri Jainkoaren hitza; ekin sasoia danean eta ez danean, emon arrazoiak, zentzunduazo eta aholkatu, zure pazientzia guztia eta irakasteko gaitasuna erabiliz. Etorriko da-eta gizon-emakumeek irakaspen osasungarria jasango ez daben sasoia; euren grinen eraginpean, maisuz inguratuko dira, euren belarrien atsegingarri; egiatik alboratuko dabez belarriak eta ipuinetara bihurtuko. Zuk, ostera, jokatu

zuhur gauza guztietan, eroan sufrimentuak, ekin Barri Ona zabaltzeari, bete ondo zeure zerbitzua.

Ni neure bizia opari eskeintzeko zorian nago; gainean dot mundu honetatik joateko ordua. Burruka ona egin dot, amaitu dot lasterketa, gorde dot sinismena. Honezkero zain dot garaipenaren koroa, Jaunak, epaile zuzenak, azken egunean emongo deustan koroa; eta niri ez ezik, baita haren agerraldia maitasunez itxaroten daben guztiei be.

Jaunak esana.

**Erantzun salmoa** (Sal 71 [70], 8-9. 14-15b. 16-17. 22 (R/. ik. 15a))

San Blasi eztarriko minetarako laguntza eskatzen deutsagu. Zertarako dogu eztarria? Sarritan, alkar iraintzeko, edo Jainkoa madarikatzeko erabilten dogu. Salmo honek Jainkoa gorestera gonbidatuko gaitu. Beragaz egin daigun bat.

♩= 80
Ps 070
Udaia'15
Ni - re a - ho - ak i - ra - ga - rri - ko dau, Jau - na, zu - re sal - ba - me - na.

**R/. Nire ahoak iragarriko dau, Jauna, zure salbamena.**

V/. Zure gorespenaz betea neban **a**hoa,
zure egintza ospetsuaz, egun **o**soan.
Ez baztertu ni orain zahar**tza**roan,
ez itzi ni eskutik, indarrak ahuldu jataza**ne**an. R/.

V/. Nik, ostera, itxaroten jarraituko **dot** beti,
gero eta gehiago zaitut go**ra**tuko.
Nire ahoak egun osoan iraga**rri**ko dau
zure salbazino-asmoa eta -e**gin**tza. R/.

V/.   Jainko Jaunaren egintza bikainak ditut aldarri**ka**tuko,
zurea bakarrik dan salbazinoa ira**ga**rriko.
Ene Jainko, gaztetatik irakatsi **deus**tazu,
eta gaur arte iragarri ditut zure egintza harriga**rri**ak. R/.

V/.   Eta nik be harpa-soinuz goratu**ko** zaitut,
ene Jainko, leiala za**ra**lako,
zitaraz kantatuko deutsut, oi Israelgo **San**tu. R/.

**Ebanjelioa** (Mk 12, 38-44)

Ez dogu aintzat hartzen eleizan emoten dogun dirua. Txanponik txikienaren bila ibilten gara. Jesus adi dago, eta irakaspenak ataraten dauz. Ea geuri ere balio deuskuen. Entzun!

**Aleluia** (Mt 5, 3)

R/.   Aleluia.

V/.   Zorionekoak gogoz behartsu diranak,
eurena dabe-eta Jainkoaren erreinua. R/.

*Alargun behartsu honek*
*beste guztiek baino gehiago bota dau.*

**✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik**

Aldi haretan, Jesusek, bere irakatsaldian, esan eutson jenteari: «Zabiltze kontuz lege-maisuakaz! Gogoko dabe harro-harro jantzita ibiltzea eta plazetan jentearen agurrak hartzea; gogoko ditue sinagogetan lehenengo aulkiak eta jai-jatorduetan mahaiburuak. Eta, azkenbako otoitzen atxakiaz, alargunen ondasunak irensten ditue. Holakoek epairik zorrotzena izango dabe».

Jesus tenpluko dirutegiaren aurrean jarrita egoan, jenteak kutxetara dirua zelan botatzen eban begira. Aberats askok ugari emoten eban. Etorri zan emakume alargun txiro bat be, eta txanpon bi bota zituan, huskeria bat. Jesusek, ikasleei dei egin eta esan eutsen: «Benetan dinotsuet: Alargun behartsu honek beste guztiek baino gehiago bota dau kutxara. Izan be, beste guztiek sobran

dabenetik emon dabe; honek, ostera, bere urrian, eukan guztia, bizitzeko behar ebana, emon dau».
Jaunak esana.

## HOMILIA

## JAINKO HERRIAREN OTOITZA (ESKARIAK)

Blas santu martiria eredu dogula zuzendu deioguzan Jainko onari gure beharrizanak:

—Eleizearen alde: iragarri daian Jainkoaren hitza aldi egokian eta ez-egokian, seme-alaba guztiei argi egin deien, eta danei egin deien harrera ona, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Gerran dihardduen lurraldeetan, goseteak jota dagozanetan eta gizakia aurrean erabilia danetan bakea alkartasuna eta errespetua lantzeari ekin deiogun, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Izadiak bere edertasuna agertu daian, esplotatzeari, gehiegi kontsumitzeari eta plastikoak erabilteari uko egin deiegun, neurritsuago bizi izanez, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Eukaristian alkartu garanok, Blas martiri santua eredu, goretsi daigun Jainkoa, horrek senidea errespetatzera eta haregaz solidario izatera eroan gaizan, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

Aita ona, eskatzen deutsugun guztiak gure aldetiko zainketa eskatzen deusku. Adoretu gaizuz alkar zaindu daigun. Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

## EUKARISTIAREN LITURGIA

### Eskeintza

Bedeinkatua zu, Jauna, zeru-lurren Jainkoa, zeure esku zabaletik hartu ditugu orain ekarri deutsuguzan ogi-ardauok, lurraren indarrak eta gizakiaren lanak sortuak: honeexek egingo jakuz biziaren ogi ta betiko zorionaren edari.

- ***Bedeinkatua zu, Jauna, orain eta beti***.

Senideok: egin daigun otoitz, guztiok batean, Eliza osoaren oparia Jaungoikoari eskeintzerakoan.

- ***Jainkoa goresteko eta gizakiak salbatzeko.***

**Oparien gainekoa**

Isuri egizu, Jauna, zeure bedeinkazinoa
gure emoitza honeen gainera;
zure maitasunak sutu gaizala,
maitasun horren indarrez garaitu zituan-eta
Blas gotzain martiri santuak bere gorputzeko oinazeak.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

**Prefazioa**

V./ Jauna zuekin.......................... R./ Eta zure espirituarekin
V./ Gora bihotzak .............................R./ Jaunagan daukaguz
V./ Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari…R./ Egoki da eta zuzen.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jainko ahalguztidun betiko horri.

Kristori jarraituz, Blas gotzain martiri santuak
zure izena autortzeko isuri eban odolak
argi erakusten ditu zure miragarriak:

gure makaltasunean zeure ahalmena agertzen dozu
eta indartsu egiten indarrik bakoa,
zure testigu izan dadin,
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

Horregaitik, zeruko indar guztiekin,
lurrean beti eta beti goresten zaitugu,
Zuri, Jainko guztiz handi horri,
eten barik [esanez] kantatuz: Santu, santu, santua…

## III. Eukaristi-Otoitza

Santu zara, bai, Jauna,

eta diran guztiek emoten deutsue behar dan gorespena.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez
eta Espiritu Santuaren indarrez,
Zeuk biziazoten dituzu guztiak eta santutzen
eta Zeuk diharduzu beti eta beti zeure herria batzen,
eguzkialde batetik besteraino opari garbia eskeini dakizun.

Apalik, beraz, Jauna, eskatzen deutsugu:
egin daizuzala santu, zeure Espirituaren indarrez,
oparitako ekarri ditugun ogi-ardao honeek,
zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren
Gorputz eta † Odol egin daitezan,
misterio honeek berak agindurik egiten ditugun ezkero.
Berak, saldu eben gau haretan,
ogia hartu eta, Zuri eskerrak emonez,
bedeinkatu eban,
zatitu eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:
HARTU EIZUE ETA JAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE GORPUTZA DA-ETA,
ZUENTZAT EMONGO DANA.

Era berean, afalondoan, kaliza harturik,
Zuri eskerrak emonez, bedeinkatu eban
eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA EDAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE ODOLAREN KALIZA DA-ETA,
ITUN BARRI ETA BETIKOAREN ODOLA,
ZUENTZAT ETA ASKORENTZAT
PEKATUAK PARKATZEKO ISURIKO DANA.
EGIZUE HAU NEURE OROIGARRI.

**Hau da sinismenaren misterioa.**
Hil eta biztu zarala, Jauna,
Zu barriz etorri arte, hau dogu, hau, barri ona!

**Horregaitik**, Jauna, guk,
zure Semearen nekaldi salbagarria eta hilen artetik biztea

eta zeruratze miragarria gogoratuz,
haren azken etorrera itxaroten dogula,
Zuri eskerrak emoteko eskeintzen deutsugu
sakrifizio bizi eta santu hau.

**Begira**, Jauna, zure Eleizearen eskeintza honi;
ikusi eskeintza honetan
Zurekin baketu gaituan Jesu Kristoren oparia;
egizu, Jauna, zure Semearen Gorputza eta Odola
hartzen ditugunok,
Espiritu Santuaz beterik, Jesu Kristogan
gorputz bat eta espiritu bat izan gaitezala.

**Berak** egin gaizala Zuretzat betiko opari,
zure aukeratuekin zerua jaritsi daigun:
lehenengo, Maria guztiz dohatsua,
Jainkoaren Ama beti Birjinarekin,
haren senar Jose santuarekin,
zure Apostolu eta martiri santuekin,
**Blas Gotzain martiri** santuarekin eta santu guztiekin;
badakigu, honeen bitartez
zure laguntza izango doguna nonahi eta beti.

**Gu** Zurekin baketzen gaituan opari hau izan bedi, Jauna,
mundu guztiarentzat bake eta salbamen.

**Mundu** honetako ibilaldian,
bete egizu sinismenez eta maitasunez zure Eleizea:
zeure zerbitzari Frantzisko gure Aita Santua,
Joseba gure Gotzaina,
beste gotzain eta eleiz-gizon (-emakume) guztiak
eta zeurea dozun herri osoa.

**Entzun**, bihotz onez,
zeure aurrera deitu dozun familia honen otoitzak;
Aita guztiz ona, erakarri Zeugana
mundu zabalean banaturik dabiltzan zeure seme-alabak.

† Hildako gure senideak (…),

eta mundu honetatik Zurekin adiskide joan diran guztiak,
hartu eizuz bihotz onez zeure zeruan;
geuk ere sinisten dogu
zure aintzaren zorion betea izango dogula betiko,
eurekin batean, Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez;
beronen eskuz emoten deutsazuz
ondasun guztiak munduari.

HONEN BITARTEZ, HONEKIN ETA HONENGAN
ZURI, AITA, JAUNGOIKO AHALGUZTIDUN HORRI
ESPIRITU SANTUAREKIN BATEAN
OSPE TA AINTZA GUZTIA
GIZALDI TA GIZALDI GUZTIETAN. —Amen.

Salbatzaileak agindu ta irakatsiari jarraituz
bildur barik esan dagigun.

**GURE AITA** zeruetan zarana
santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia
zeruan bezela lurrean ere.
Emoiguzu gaur
egun honetako ogia;
parkatu gure zorrak
geuk ere geure zordunei
parkatzen deutsegun ezkero;
ez eiguzu itzi tentazinoan jausten,
baina atara gagizuz gatxetik.

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik,
emoiguzu bakea gure egunotan,
zure errukiari esker
pekatutik gabi bizi izan gaitezan
eta estualdietan sendo;
betiko zorionaren itxaropenean,
Jesukristo gure Salbatzailea
noiz etorriko dan zain gagozala.

*- Zeurea dozu erregetza;*

*zeureak ospe ta indarra orain eta beti.*

**BAKE ESKEINTZEA** (Abadeak)
† Jesukristo gure Jauna, zeuk esana da apostoluei 'bakea izten deutsuet, neure bakea emoten'; begira zure Eleizearen sinismenari eta ez gure pekatuei, eta zeure gogoa danez, emoiozu eleizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zarata, gizaldi eta gizaldietan. *- Amen.*

† Jaunaren bakea beti zuekin
*- Eta zure espirituarekin.*

† Emoiozue bakea alkarri.
Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *Erruki, Jauna.*

Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *Erruki, Jauna.*

Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *emoiguzu bakea.*

## JAUNARTZEA

† Hona hemen Jainkoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauana: zoriontsuak honen mahaira deituak:

—Jauna, ni ez naz inor zu nire etxean sartzeko,
baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.

### Jaunartzean

Hemen gaituzu, Jauna, ogiaren eske,
bizi behar honetan ahuldu bait gintezke.
Zure gorputz santua hartu nahi genduke:
zu barik bizitzerik ezingo genduke.

Munduak behar badau eguzki-argia,
mendiko abereak, iturri garbia;
gu danok nahi badogu barruko bizia

beharrezkoa jaku zeruko ogia.

Jauna, zure grazia lagun dakigula,
ogi hau jan dagigun behar dan bezela;
Ez ahaztu txarrerako jarriak gaozela:
arren, zuzen ta leial bizi gaitezela.

**Jaunartze ondorengoa**

Hartu dogun Eukaristiak indartu gaizala, Jauna,
Blas gotzain martiri santua indartu eban lez,
bai zure zerbitzuan leial agertzeko,
bai bere nekaldian sendo irauteko.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

**Amaiera agurra**

Blas gotzain martiri santuak Barri Ona iragarteko adorea izan eban, eta Izadira eta pobreengana hurreratu zan, Jainkoa bere bizikereaz goretsiz.

Haren bedeinkapena daroagunok ezin geikeo hutsik egin: erabili daigun eztarria Jainkoa goraltzeko eta Barri Ona iragarteko, eta, ondasunak, besteen bizitza alaitzeko.

## Azken onespena

† Jauna zuekin.
—*Eta zure espirituarekin*

† Bedeinka ta gorde zaizela Jainko ahalguztidunak:
Aitak eta Semeak † eta Espiritu Santuak.
—*Amen*.

**Kanta Jaunari** kantu barri,
kanta guztiok herriz-herri,
kanta Jaunaren izenari,
mundu guztia poz-kantari.

Gora Jainkoa zeruetan,
goratu danok eleizetan,
goratu baita aingeruek
eta goratu lurrekoek.

† Zoaze Jaunaren bakean.
—Eskerrak Jaungoikoari.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta sal-ba-ga-rri, no-na-hi eta

beti guk Zuri eskerrak e-mo-te-a, Jauna, Aita guz-tiz san-tu,

Jainko ahalguzti - dun be - ti - ko ho-rri. Kris-to-ri jarraituz,

Blas martiri san-tu-ak, zure izena autortzeko isuri eban o-do-lak

argi erakusten ditu zu-re mi-ra - ga-rri-ak: gure makaltasunean

zeure ahalmena agertzen do-zu-la-ko, eta indartsu egiten indarrik

ba - ko - a, zeure testigu izan da-din, Jesu Kristo gure Jau-na-

ren bi-tar-tez. Horregai-tik, zeruko indar guz-ti-e-kin, lurrean

beti eta beti goresten zai-tu - gu, Zuri, Jainko guztiz handi ho-rri,

e - ten ba - rik kan-ta-tuz: